


# EUSKAL PRESO POLITIKOEN KOLEKTIBOAREN
# ADIERAZPENA EUSKAL JENDARTEARI

**EPPKak azken hilabeteotan burutu duen eztabaida politikoaren ondorioetan oinarriturik honako adierazpen publikoa zabaltzen du:**

## 1 · GATAZKA POLITIKOA ETA KONPONBIDE DEMOKRATIKOA

Gatazka politiko honek gure Herriaren eskubideak urratu ditu. Gernika bonbardatu zuten 75. urteurren honetan eta euskal Estatua (Nafarroa) okupatu zuten V. mendeurren honetan, Frantzia eta Espainiak zapalkuntzari eusten diote.

Gatazkaren konponbide demokratikoak proiektu politiko guztiak ahalbidetu beharko ditu, independentzia barne. Herriak du hitza eta erabakia.

## 2 · EZKER ABERTZALE OSOAREN HAUTU POLITIKOA

Kokapen politiko berritua eskaini du Ezker Abertzaleak, iniziatiba politikoa berreskuratuz eta helburu politikoen erdiespena indar metaketa politiko, instituzional eta sozialean finkatuz.

Estrategian sakondu eta urrats erabakigarriak hartzen jarraituko dugu. Euskal gizartearen eskaera eta mandatua ere horixe baita. Eraginkorrak izateko eta prozesua azken porturaino heltzeko, Herriaren indarrak biderkatu behar ditugu eta denok elkar batera jo.

EPPK Ezker Abertzalearen estrategia politikoari atxikitzen gatzaizkio fermuki.

## 3 · ETAren ERABAKIA

ETAk ildo armatua bertan behera uzteko erabaki historikoa hartu du. ETAren borrokak herri honek pairatzen duen zapalkuntza agerian utzi du, Estatuen izaera ez-demokratikoa biluztaraziz.

EPPK-k ETAren erabakiari bere errespetu eta babes osoa helaraziz, borroka armatua tresna gisa erabiltzeko garaia gainditutzat ematen du.

## 4 · ANOETA, GERNIKA ETA AIETE-ko ERREFERENTZIA POLITIKOAK

Anoetako planteamenduarekin bat etorriz (2006) gure aitortza eskaintzen diogu ETAri, Gobernuekin balizko negoziazioan presoon kaleratzeari buruzko urrats eta akordioak finkatzeko.

Gernikako Akordioa (2010) konponbide integralari begira erreferentzia nagusitzat jotzen dugu.

Aieteko Adierazpena (2011) gatazkaren konponbide prozesua egituratzeko eta negoziazio bide orri gisa sustengatzen dugu.

## 5 · EGOERA POLITIKOA

Ezker Abertzalearen berregokitzapen estrategikoak egoera soziopolitikoa errotik irauli du, Herri indarrak metatuz eta eraldaketa politikoa gorpuztuz.

Estatuen jokabidea blokeoan eta honen bidez euskal jendartean etsipena eragin nahian datza.

Estatuek prozesu demokratikoan urratsak eman ditzaten, indar metaketa eraginkorrena lortu behar dugu. Jabe gaitezen bizi dugun une historiko eta politikoaz. Orain da ordua! Ofentsiba politikora pasa behar dugu, urte luzeotan metatutako kapital politikoa berraktibatuz helburuak erdiesteko. Borroka garaia da!

## 6 · ESPETXE POLITIKA

Espetxe politikak gerra estrategiari erantzun dio. EPPKk tinkotasunez egin dio aurre, estatuen asmoak porrotera kondenatuz. Aukera politiko berria EPPKren borrokaren emaitza ere bada, borrokak ekarri gaitu honaino, borrokak askatuko gaitu.

Espetxe politika egoera berrian, prozesu demokratikoaren kontrako murru gisa baliatzen da eta euskal presoak bahitu politiko gisa. Eskubide urraketa du oinarri, heriotz eta sufrimendu asko eraginez. Salbuespen neurri guztiak, sakabanaketa eta biziarteko zigorra besteak beste, lehenbailehen altxatu behar dira dagozkigun eskubideak onartuz.

Damuketa-salaketa militanteak eta pertsonak suntsitzeko bidea besterik ez da, erabat baztertu eta arbuiatzen duguna. Presio, xantaia eta jokaera makurrak bertan behera utzi behar dira, eskubideak ukatzeko espetxe onuren erabilpena bezala.

Gatazka politikoaren isla gara eta irtenbidea konponbide integralarekin loturik doa, Amnistia-Autodeterminazioarekin. Gatazkarako arrazoiak konponbidean jarri, preso guztiak kaleratu eta berriak ez sortzearekin. Kaleratzeko oztopoak indargabetu behar dira, Euskal Herriarekin batera, euskal herritarrekin batera prozesu politikoan parte hartzeko.

Kolektiboak aurrerantzean, baldintza berrien argitan, urrats berriak emateko prestutasun osoa du.

## 7 · GATAZKAREN BESTE ONDORIOAK

Zapalkuntzaren biktima dira Euskal Herria eta euskal herritarrok. Gatazkaren parte eta ondorio preso eta iheslari politikoak. Gatazkak kaltetuak eta biktimak eragin ditu. Abenduan Gernikak egindako adierazpenarekin bat egiten dugu.

Alde anitzetako minaz jabetzen gara erantzukizun osoz. Gure larruan eta hurbilekoenean ezagutzen dugu belaunaldiz belaunaldi. Ulerkor izateak ez gaitu itsutzen ordea, samina helburu politiko batzuen alde erabiltzen baita. "Biktimen auzia" gatazka betikotzeko erabiltzen duten bezala. Biktimak eta presoak kontrajartzen dituzte bi auziei errotik irtenbide propioa eman beharrean.

Hainbeste min eragindako gatazkaren erroak ulertzea, alde bakoitzaren ikuspegiarekin, ezinbesteko eginbeharra izango da. Ariketa sakon eta mingarria, egiatia izango bada askatasunetik egin beharrekoa, gatazka gainditzeko borondatetik eta konponbide asmoz.

Konponbideak, ondorioak aztertu eta osatu behar ditu.

## 8 -ESKAINTZA

Espainia eta Frantziako gobernuak ausart eta erantzukizun historikoz, aurrean duen aukera baliatzeko dei egiten diegu. Konponbide demokratikoaren ibilbidean sar daitezela. Espainia, Frantzia eta Euskal Herriak irabaziko dute. Herritarrok irabaziko dugu.

EPPKk euskal preso politikoon egoera eta eskakizunen inguruan mintzatzeko prestutasun osoa adierazten du. Berrikitan izendatutako Mintzakidetza eginkizun horretarako hautatua izan da.

Nazioarteko komunitatea, azken garaietako inplikazioa biderka dezan animatzen dugu.

**Amnistia-Autodeterminazioa!**

**EPPK**

*Euskal Herria bihotzean*,
2012ko ekaina